# URTEAN ZEHARREKO XXIII. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gaiztoari hitz egiten ez badeutsazu,*
*zeuri eskatuko deutsut haren heriotzaren kontua.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 33, 7-9

Honan berba egin eustan Jaunak: «Gizaseme, Israel herriaren begirale izentatu zaitut. Nik esandakoa entzutean, ohartuazo egin behar dozuz nire izenean. Gaiztoren bati hilko dala esaten badeutsat, eta zuk ez badozu ohartuazoten bere jokabidea aldatu dagian, gaiztoa bere erruz hilko da, baina zeuri eskatuko deutsut haren heriotzaren kontua. Ostera, zuk ohartuazoten badozu gaiztoa, bere jokabidea aldatu dagian, eta harek ez badau aldatzen, gaiztoa bere erruz hilko da, baina zuk onik atarako dozu zeure bizia».

Jaunak esana.

### Erantzun salmoa

*Sal* 95 [94], 1-2. 6-7c. 7d-9 (R/. 7d. 8a)

R/. **Entzungo ahal dozue gaur Jaunaren**

**berbea:**

**«Ez gogortu zeuen bihotza».**

V/. Zatoze, egin deiogun poz-oihu Jaunari,
poz-irrintzi, salbatzen gaituan hatxari.
Aurkeztu gakiozan eskerrak emonez,
egin deiogun jai txaloka eta kantari. R/.

V/. Zatoze, gurtu daigun ahuspezturik,
belaunikatu gaitezan egin gaituan Jaunaren aurrean.
Bera da-eta gure Jainkoa,
eta gu harek larratutako herria,
haren zainpeko artaldea. R/.

V/. Entzungo ahal dozue gaur haren ahotsa:
«Ez gogortu bihotza Meriban lez,
Masako egunean basamortuan lez,
tentatu egin ninduen-eta zuen gurasoek,
probatu, Nik eginak ikusi arren». R/.

## II. IRAKURGAIA

*Maite dauanak osorik betetzen dau legea.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 13, 8-10

Senideok: Ez izan zorrik inogaz, alkar maitatzekoa baino, izan be lagun hurkoa maite dauanak betea dau-eta

legea. Harako «ez egin adulteriorik, ez hil inor, ez ostu, ez inorenik gura izan» eta beste edozein agindu, esaera honetan batzen da: «Maitatu egizu lagun hurkoa zeure burua lez».

Lagun hurkoa maite dauanak ez deutso gatxik egiten. Maite dauanak, beraz, osorik betetzen dau legea.

Jaunak esana.

## Aleluia

*2 Ko* 5, 19

R/. **Aleluia.**

V/. Jainkoak ziharduan Kristogan mundua beragaz adiskidetzen,

eta guri emon deusku adiskidetzearen mezua. R/.

## EBANJELIOA

*Jaramon egiten badeutsu, irabazi dozu senidea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 18, 15-20

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Zure senideak pekatu egiten badau, zoaz beragana eta eiozu agiraka bakarrean. Jaramon egiten badeutsu, irabazia dozu senidea. Jaramonik egiten

ez badeutsu, barriz, hartu egizuz zeugaz lagun bat edo bi, auzia bi edo hiru lekukoren autorpenaz erabagi behar da-eta. Honeei be jaramonik egiten ez badeutse, esaiozu alkarteari, eta alkarteari be jaramonik egin gura ez badeutso, izan bedi zuretzat jentil edo zergalari baten pareko.

Benetan dinotsuet: zuek mundu honetan lotua, zeruan be lotuta geldituko da, eta zuek mundu honetan askatua, zeruan be askatuta.

Beste hau be badinotsuet: zuetariko bik alkar hartzen badabe mundu honetan Jainkoari zeozer eskatzeko, emon egingo deutse zeruko nire Aitak. Izan be, nire izenean bi edo hiru lagun baturik dagozan lekuan, han nago Ni euren artean».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXIII. DOMEKA

## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Gorren belarriak zabalduko dira*
*eta mutuaren mihinak oihu egingo dau pozez.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 35, 4-7a

Esan bihotz-bildurtiei:
«Eutsi gogor! Ez bildurrik izan! Horra zuen Jainkoa!
Ha bera dator zuek salbatzera
eta merezia daben zigorra arerioei emotera».

Orduan, itsuen begiak edegiko dira
eta gorren belarriak zabalduko;
herrenak basahuntzak lez salto egingo dau
eta mutuaren mihinak oihu egingo pozez.
Urak sortuko dira basamortuan eta errekak eremuan;
lur lehorra urtegi bihurtuko da eta lur agorra iturri.
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 146 [145], 6c-7. 8-9a. 9b-10 (R/. ik. 1b)

R/. **Goratu egizu Jauna, nire barrua.**
Edo: **Aleluia.**
V/. Betiko eusten deutso Jaunak bere leialtasunari.
Zapalduen eskubideak defendatzen

ditu,
gose diranei ogia emoten.
Jaunak askatzen ditu presoak. R/.

V/. Jaunak zabaltzen ditu itsuen begiak,
Jaunak jasotzen konkortuak,
Jaunak maitatzen zintzoak,
Jaunak ditu etorkinak zaintzen. R/.

V/. Umezurtzei eta alargunei zutunik deutse eusten,
baina gaiztoen nagusitza iraultzen.
Jauna errege da betieran,
zure Jainkoa, Sion, errege gizaldien gizaldietan! R/.

## II. IRAKURGAIA

*Ez ete ditu aukeratu Jainkoak pobre diranak, erreinua ondaretzat jasotzeko?*

Santiago Apostoluaren epistolatik

*St* 2, 1-5

Ene senideok: Ezin alkartuak dira Jesu Kristo gure Jaun aintzatsuagan dozuen sinismena eta pertsonen artean bereizketa egitea.

Emon daigun zuen batzarrean gizon bi sartzen dirala, bata aberatsa, urrezko eraztunez eta dotore jantzita, eta bestea pobrea, zarpail jantzita; eta dotore jantzitakoari sekulako begiramenez esaten deutsazuela:

«Jesarri zu hemen, ohorezko tokian»; pobreari, barriz: «Hago hi hor zutunik» edota «jarri adi lurrean, nire oinazpikoaren ondoan». Holan jokatuz, ez ete zabiltze zeuen artean bereizketa egiten, eta ez ete dozue eretxi okerrez epaitzen?

Entzun, ene senide maiteok: Ez ete ditu aukeratu Jainkoak munduaren begietan pobre diranak, sinismenez aberats izateko eta bera maite dabenei agindutako erreinua ondaretzat jasotzeko?

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Mt* 4, 23

R/. **Aleluia.**

V/. Erreinuari buruzko Barri Ona iragartzen eban Jesusek,
eta herrian gatx guztiak osatzen ebazan. R/.

## EBANJELIOA

*Gorrei entzun ahal izatea emon deutse*
*eta mutuei berba egitea.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik

*Mk* 7, 31-37

Aldi haretan, itzi eban Jesusek Tiro aldea eta, Sidonen zehar, Galileako itsasora bihurtu zan barriro, Dekapolisko lurraldean zehar.

Gizon gor eta totela eroan eutsoen, eta eskua gainean ezartzeko eskatu. Jesusek, jenteagandik aparte hartuta, atzamarrak belarrietan sartu eutsozan eta txistuaz mihina ikutu. Gero, zerurantz begiratuz, arnasa sakon hartu eta esan eutson: «Effeta», hau da, «Edegi». Eta une berean, belarriak edegi jakozan, mihina askatu eta garbi berba egiten hasi zan.

Gertatua inori ez esateko agindu eutsen Jesusek; baina zenbat eta aginduago, orduan eta gehiago zabaltzen eben.

Guztiz harrituta, hauxe inoen: «Ondo egin dau dana: gorrei entzun ahal izatea emon deutse eta mutuei berba egitea».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO XXIII. DOMEKA

## C urtean

## I. IRAKURGAIA

*Zeinek ulertu leike Jaunak nahi dauana?*

Jakituria liburutik

*Jkt* 9, 13-19 (gr. 13-18)

Zein gizakik ezagutu leike Jainkoaren asmoa?
Zeinek ulertu Jaunak nahi dauana?
Gizaki hilkorron gogoetak kaskarrak dira,
gure ideiak ziurtasun bakoak.
Gure gorputz galkorra arimarentzat zama da,
eta lurrezko txabola honek
berez pentsakor dan espiritua nekatuazoten dau.

Nekez igartzen deutsegu lurreko gauzei
eta kostata aurkitzen eretxian doguna be.
Nork arakatuko ditu, beraz, zerukoak?
Nork ezagutuko leukean zure asmoa,
Zeuk emon ez bazeuntso jakituria
eta zerutik bialdu zeure espiritu santua?

Holan bakarrik izan zan zuzena lurtarren jokabidea,
holan ikasi eben gizakiek zer dozun

atsegin,
eta salbatu ziran jakituriaren bidez.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 90 [89], 3-4. 5-6. 12-13. 14 eta 17 (R/. ik. 1)

R/. **Jauna, gure ihesleku Zeu izan zara gizalditik gizaldira.**

V/. Gizakia hautsera bihurtuazoten dozu,
esanez: «Bihurtu lehenera, gizakiok».
Bai, mila urte zure begietan
atzo igaro zan eguna adina,
gaualdi bat adina. R/.

V/. Hor daroazuz gizakiak,
ametsa lez dira;
ernetzen dira goizean bedarra lez;
goizean erne eta loratzen da-eta,
arratsaldean zimeldu eta igartzen. R/.

V/. Irakatsi eiguzu geure egunen kontua eroaten,
zuhurtasunaren muinaz jaubetu gaitezan.
Bihurtu zakiguz, Jauna! Noiz arte?
Erruki zaitez zeure zerbitzariez. R/.

V/. Asetu gagizuz goizero zeure maitasunaz,
poztu gaitezan eta zoriontsu izan geure egun guztietan.

Betor gugana Jaunaren, gure Jainkoaren, gozotasuna
eta sendotu begi harek gure eskuen lana;
sendotu dagiala, bai, gure lana. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Hartu egizu, ez esklabo lez,*
*anaia maitea lez baino.*

San Paulo Apostoluak Filemoni egindako epistolatik

*Flm* 9b-10. 12-17

Anaia maitea: Nik, Paulok, honezkero zahartuta eta orain, gainera, Kristo Jesusengaitik kartzelan nagoan honek, mesede bat eskatu nahi deutsut, kartzelan sortu dodan neure seme Onesimorentzat. Barriro bialtzen deutsut bera, ene bihotz-bihotzeko dodan hau.

Neugaz euki nahi neban, zure ordez zerbitzari izan nengian, Barri Onagaitik kartzelan nagoala. Halan be, ez dot zure baimenik barik ezer egin nahi izan, mesede hori gogoz egin dagizun eta ez behartuta.

Beharbada, horretarako alde egin eutsun apur batez, gero betiko hartu zengian, eta ez esklabo lez, esklabo

baino gehiago lez baino, anaia maitea lez. Maite-maitea da niretzat, eta zenbatez maiteago ez ete da izango zuretzat, bai gizon dan aldetik eta bai kristau dan aldetik. Beraz, fedean adiskide banozu, hartu egizu Onesimo neu banintz lez.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Sal* 119 [118], 135

R/. **Aleluia.**

V/. Erakutsi aurpegi argia, Jauna, zeure zerbitzari honi,
irakatsi zeure arauak. R/.

## EBANJELIOA

*Inor ezin leiteke nire ikasle izan,*
*dituan guztiei uko egiten ez badeutse.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 14, 25-33

Aldi haretan, jente-talde handiak joiazan Jesusegaz; honek, hareengana bihurturik, esan eutsen: «Nonork Nirekin etorri nahi badau, eta bere gurasoak eta emaztea, seme-alabak eta neba-arrebak, eta bere burua bera baino be maiteago ez banau, ezin

leiteke izan nire ikasle. Bere kurutzea hartu eta nire ondorik ez datorrena ezin leiteke izan nire ikasle.

Izan be, zuetariko nork, torrea egin gura badau, jesarri eta ez ditu aurretik gastuen kontuak ataratzen, amaitzeko lain ba ete daukan ikusteko? Osterantzean, zimenduak hartu ondoren ezin burutuko baleu, hori ikustean barre egingo leuskioe guztiek, esanez: “Honako hau eregitzen hasi zoan eta ezin izan jok amaitu”.

Edota zein erregek, beste baten kontra gerrara joan gura badau, jesarri eta ez dau aldez aurretik hausnartzen, ea hamar mila gizon nahiko dituan, hogei milarekin kontra datorkionari aurre egiteko? Eta ezetz ikusten badau, oraindik bestea urrunean dala, mandatariak bialduko deutsoz bakea eskatuz.

Era berean, zuetariko inor ezin leiteke nire ikasle izan, dituan guztiei uko egiten ez badeutse».

Jaunak esana.